# HITZALDIA

Senideok: aldi barri baten sartzen gara domeka honegaz. Abendualdiari emoten deutsagu hasierea. Lau domeka eukiko doguz Gabonetarako prestatzeko. Domeka bakotxa ezaugarritu egingo dogu kandelatxo bat iziotuz. Otoitzak aparteko itxaropen giroan eginak izango dira; itxaropena eta alaitasuna izango dira gure bidelagun, eta aurkituko doguz Abendualdiko irudietan: Profetea, Joan Bateatzailea eta Maria.

Jainkoaren erregalua dogula esaten dogu Liturgia aldi barri bat hastea. Erregalu horrek gure lo-zorrotik atara egin gura gaitu, gure ingurura sinismen argitasuna isuri, eta gauzak eta aldiak Jesusen ikuspegitik begiratzen irakatsi.

Horraitino, ez da gauza erreza, erreza dala emoten dauan arren. Gizaldiak eta belaunaldiak daroaguz «Zatoz, Jauna!» dei

egiten; etorri dala ospatzen Gabonetan; eta guzti horrek gure barruan izan behar izango leuken eragina ez somatzen.

Bai, senideok! «Zatoz, Jauna!» aldarrikatuko dogu aurtengo Abendualdian ere, behin eta barriro. Hebertarrak, Jainkoaren Herria, 18 gizaldian zehar egon dira (edo dagoz oraindino egon) Mesiasen etorrerea itxaroten eta eskatzen. Guk etorri dala sinisten dogu, baina etorri daitela eskatzen dogu. Zer esan gura dau horrek? Ez badogu barruratzen eta norberetzen, kontraesanean bizi izango gara, eta antzua izango da aurtengo Abendualdia ere. Egin daigun ahalegintxo bat, ze salbazino aitatzen eta eskatzen dogun ulertzeko eta gura izateko. Salbazino hori ez daitela izan neuk (gutariko bakotxak) ulertzen dogun erako Salbazinoa. Ezerk ez gaizala "lotara eroan" eta Jainkoak berak emoten deuskun Salbazinotik aldenduazo.

Batzuk, beharrizanei lotuegiak egonik,, diru apurren baten salbazinoa amesten

dabe. Beste batzuk, euren alderdiak garaile urten daiala hurrengo hauteskundeetan, eta agintea eskuratu daiela. Beste batzuk familiaren ondo izateari begiratuko deutsoe…, eta danek eskatuko deutsoe Jainkoari egoera edo ames horrei erantzun deiela.

Baina zer emoten deusku Jainkoak? Jainkoak bizitzara deitu gaitu, eta han zorionera. Haren zeozer daroagu gure izatean, gure barruan. Eta horixe ezagutzen eta garatzen eta azaleratzen eta alkarbanatzen ez dihardugun artean, guzurrezko izakeratik jardungo dogu, ondasunak ditugula salbamen-bide, edo agintaritzea, edo seme-alaben ondo egotea… eta gure bizitzak lehengotan jarraituko dau, eta batek baino gehiagok uste izango dau dan-dana dala guzurra baina halantxe bizi izan behar dogula.

Jainkoak ez gaitu guzurretan gura: profeten bidez itxartu egin gura gaitu. Bere Seme Jesu Kristoren bidez beragazko

hartu-emonetara deitzen gaitu, eta, lotura guztietatik eta guzurrezko usteetatik askaturik, benetako salbamenean biziazo nahi gaitu.

Horixe da bilatu behar doguna: gure *benetako izatea*, Jainkoak emona doguna, barruan daroaguna. Eta horixe garatzea eskatzen dogu «*Zatoz, Jauna*!» dinogunean: etorria izan danak, neugan ere agertu beharra dauka.